# BERSO-BERRIAC

---

**1**

Cargu eguiñ biayot
Pello errotari
cergatican dabillen
guezur contari
deshonratu nai luque
Juan José Udarregui
ez dit mancha aundiric
billatuco neri
nic asco berari
badauzca ugari
ez da ondo ari
cer mutilla ori
propina partitzeco
ezdaucanari.

**2**

Pelloc itzeguiten du
gogor ta torpezan
neri ecer emateco
etzayola esan
ez aditu ta ere
gustocua izan
comprendituco zuen
artzeco izan bazan
bera dago causan
ez dago pobrezan
zartu da interesan
bota du grandezan
guezurra nai dubenac
sinistu dezan

**3**

Guizon orrec emandu
asco esperienci
nai dubena esan da eguiñ
daduca licenci
urretan omen dauca
asco abundanci
lasai eguiñ dezaque
mantendu ta janci
ematiari utzi
artutziari eutsi
dauca lotsa guchi
ortzac eracutsi
onequiñ biar degu
bost pacienci.

**4**

Orren despreciyuac
ez dande aztuta
arro dabill orgulloz
aberastu ta
Juan José dagualaco
burutic nastuta
ori iñoiz bezela
zurrutac poztuta
tragua ustu ta
mocua zorroztuta
copeta beltztuta
erdi berdoztuta
lotsac ematen dizquit
berac ez du ta.

**5**

Tocatu balitz neri
premiyua ematia
Pelloc esperatuco
zuben partia
orri gustatzen zayo
aurrian jartia
ez artu ta saltoca
iguesi juatia
ez da inocentia
maleciz betia
aguincen decentia
cer ayudantia
orrec quendutzeco du
borondatia.

**6**

Falso testimoniyua
modu orretan sortzen
castigatu dezagun
ez da bildurzen
zuc derecho gabiac
badaquizu artzen
ezpañac igurtzita
patricadau sartzen
or zabilza urtzen
honradubac neurtzen
ez badezu aitortzen
asico naiz chartzen
ez dezu cere honra
asco edertzen.

**7**

Azpeitiyan izanac
guera elcarrequiñ
pacienciya asco
biar da orrequiñ
beste lagun bat ere
bazuen berequiñ
biciro portatubac
ez dira nerequiñ
baguendu cerequiñ
paquia gurequiñ
ceiñ gabilzan ciquiñ
nai duenac jaquiñ
biar dan lecutican
lanari equiñ

**8**

Orrelaco moduric
iñon egundaño
ez degu obserbatu
guc orain daño
nerezat izanduda
franco desengaño
cochian juan ninzan
Azpeitiaraño
iyo ari goraño
norc daqui noraño
itzeguiten laño
Pello ta Otaño
asiera obia
despedida baño

**9**

Azpeitiyan utziya
zuten urre pilla
ostatura juan ciran
cambiyo billa
amar ta amabi duro
zan biyen partilla
Juan José gabetanic
eguiñ zuten tortilla
ni oso humilla
ez negüen abilla
corputza debilla
aprovecha nadilla
itchuben aurreraco
¡Ay! cer cuadrilla

**10**

Pello Donostiara
etzaiztuzte deitu
norc bere oñaciac
pasa biaitu
emengo publicuac
humillac nai ditu
zu guztión buruba
chocuan gueldìtu
gu biartu gaitu
simple iruditu
ez naiz atrebitu
zuri ventac aitu
orgullo gueyeguiyac,
ortara zaitu

**11**

Asco egoten guera
dirubac poztubac
versolariyac guchi
aberastubac
corritzen ez degulaco
gu gaude moztubac
urtiak juan eta
odolac oztubac
eguite dira gastubac
ez dande aztubac
ordena estubac
itzqueta justubac
Donostiyan nai dira
guizon prestubac

**12**

Eguiyaz empliatu
dauzcatzun indarrac
utzi citalquerizco
esan biarrac
zu cerala mediyo
sortu ciran guerrac
ez dizquidatzu eguiñ
acizo ederrac
ez izan zabarrac
Guipuzcoarrac
desaide ta farrac
zure saque charrac
errestatuko ditu
Udarregui zarrac